# *EUSKAL IZENDEGIA* GAUZATZERAKOAN ERABILITAKO IRIZPIDEAK

*Mikel Gorrotxategi Nieto*[1]
*Onomastika batzordeko idazkaria*

Eskuan duzun izendegi hau Euskaltzaindiak urte askoz egindako lanaren azkeneko urratsa da. Izan ere, 1966an Aingeru Irigaraik proposatuta *Euskaltzaindiak onartutako izenlerroa* argitaratu zen, eta orduz geroztik Jose Maria Satrustegik prestatutako *Euskal izendegia* hiru aldiz argitaratua izan da, 1972an, 1977an eta 1983an.

Argitalpen horien helburu izen zerrenda ematea izan zen. Gizartearen gose-egarria asetzeko premia zegoen, bereziki euskal izenak jartzea legez onartu zenetik, eta betebehar hori Euskaltzaindiari zegokion. Bestalde, Akademiak garai batean zituen baliabideekin zerrendak ematea baino gutxi gehiago egin zezakeen.

Kontuan hartzekoa da, dena dela, izendegi horiek gizartean izandako onarpen eta arrakasta. Horretaz jabetzeko aski da urte gutxi batzuetan ponte izenetan izan zen aldaketa ikustea, orain dela hiruzpalau hamarkada ez bezala egun gazte eta haur gehienen ponte izena euskalduna baita.

Oraingo argitalpen honekin Euskaltzaindiak bi helburu lortu nahi izan ditu. Batetik, aurreko argitalpenetan emandako zerrendak osatu eta euskal onomastikaren altxor ezkututik hainbat eta hainbat izen argitara ematea. Bestetik, izen bakoitzaren jatorria edo nondik norakoa bere esanahiarekin eskaini eta, aldi berean, gaztelaniaz eta frantsesez dituen baliokideak ematea.

## Irizpide nagusiak

Ponte izendegi hau osatzerakoan aintzat hartu den oinarrizko printzipioa honako hau izan da: proposatzen diren izenetan erabileraren eta hizkuntzari dagokion zuzentasunaren arteko oreka. Irizpide errazak badirudite ere, zailtasun ugari agertzen dira gauzatzeko orduan, euskarak urteetan bere ponte izenak gizarteratzeko izan duen historia nahasia dela-eta.

Erabiltze maiztasuna hartuz gero irizpide bakartako, euskal izentzat eman beharko genituzke gure gizartean oraintsu arte maiztasun handiena izan duten izen ez euskaldunak, hala nola, *Pedro* edo *Pierres* eta *Santiago*. Argi dago izen horiek ezin direla euskal izentzat hartu, gure hizkuntzak badituelako kasu horietarako berezkoak, hots, *Petri, Peru* edo *Pello* eta *Jakue*. Hortaz, erabiltze maiztasuna ezin da besterik gabe irizpidetzat hartu. Irizpide hori baliogarri izan daiteke, aldiz, azken urteotan zabaldu diren izen berriak sartzeko edo saihesteko orduan. Horretan oinarriturik onartu dira arraskasta izan duten hainbat izen berri: *Edurne, Iñaki, Miren*,... eta saihestu *Albontsa* eta *Onintza* bezalakoak.

Hizkuntzarekiko errespetu eta zuzentasunaren irizpidea ezartzea ere ez da gauza erraza. Dena dela, gure ustez, euskal izentzat ematen ahal dira honako hauek: euskaraz sortutako ponte izenak (*Andere, Eneko, Otsoa, Zuria*,...), pertsona izen bilakatu diren

[1] Mikel Gorrotxategi euskaltzain urgazlea eta Onomastika batzordeko idazkaria da.

toponimoak (*Ainhoa, Arantzazu, Iratxe, Xabier*,...), kanpotik sartuak izanagatik, euskal gizartean errotu direnak, batzuk aspaldi (*Mikel, Petri*,...) eta besteak beranduago (*Alexandra, Frantzisko*,...).

Esan beharra dago, kanpotik sartu zaizkigunen artean, badagoela sail ederra, egokitze fonetikoen beharrik ez zutelako, inolako zailtasunik gabe euskal izen bihurtu direnak (*Andres, Eba, Isaias, Katalina, Lukas*,...). Aipatzekoa da, azkenik, gizartean harrera ona izan duen izen berrien zerrenda luzexka bati sarrera eman zaiola izendegi honetan. Horietako batzuk XIX. mendearen amaieraz geroztik euskal santutegian sartutakoak dira (*Alazne, Ander, Edurne, Igone, Iñaki, Koldo*,...), besteak, berriz, izen arruntak (*Eki, Haizea, Haritz, Ibai, Oihana*,...) eta toponimoak (*Adi, Arga, Bizkargi, Entzia*,...), ponte izendegian XX. mendearen erdialdetik aitzina agertzen joan direnak.

**Irizpide zehatzak**

Hurrengo hauek dira euskal ponte izentzat ematen ditugunak:

1) Euskal jatorria dutenak, besteak beste, I. eta III. mendeen bitartean Akitaniako hilarrietan aurkitutakoak (*Andere, Ilun, Seniko*,...), Erdi Aroko agirietakoak (*Eneko, Gartzea, Otsanda*,...), hagionimoak (*Bladi, Eztebe, Garazi*,...), literarioak (*Aitor, Aitzol, Eleder*,...) eta mitologikoak (*Intxisu, Mari, Urrika, Urtzi*,...).

2) Bibliatik hartuak eta jatorri erlijiosoa dutenak, Euskaltzaindiak araututako moduan emanak (*Adame, Emanuel, Joanes, Karlos, Marko, Petri*,...). Horiekin batera sartu dira erabilera arrunta izan duten zenbait izenen aldaerak (*Murtuts, Peru*,...).

3) Santutegiko izenak, Andre Mariari dagozkionak bereziki (*Ainhoa, Arantzazu, Begoña, Estibaliz, Iratxe, Leire*,…).

4) Arana-Eleizalderen izendegian agertzen direnen artean jendeak onartu dituenak (*Ander, Edurne, Gorka, Iñaki, Koldo, Miren*,...).

5) Ponte izen bilakatu diren euskal hiztegiko hitz arruntak (*Haizea, Haritz, Ibai, Lorea, Oihana, Ur, Urki*,...).

6) Ponte izen gisa arrakasta izan duten euskal toponimoak, Andre Mariaren santutegikoak ez direnak barne (*Ainhize, Aralar, Gorbeia, Saioa*,...).

7) Grezia-Errometako eta Europako beste kultura batzuetako izen historiko eta mitologikoek ere badute lekua euskal izendegian, Europako gainerako hizkuntzetakoetan duten bezalaxe, betiere Euskaltzaindiak araututako moduan emanik (*Hektor, Horazio, Klio, Ziro*,...).

8) Jatorrizko izen osoak edo beren aldaera hedatuenak hobetsi dira. Aipatzekoa da, maiztasun txikiko forma bitxiek, dialektalismoek eta hipokoristiko eta txikigarriek (*Axun, Iñixio, Joxe, Kontxi, Nuntxi*,...) lagun eta familia arteko erabileran dutela leku eta ez direla izendegirako aintzat hartu. Dena dela, jatorriz hipokoristikoak edo beste izen baten aldaerak izan arren, aspaldi lexikalizatuak izan direnak izen berezitzat onartzen dira eta, hortaz, ponte izen egokitzat (*Beñat, Maider, Patxi, Pello, Txomin*,...).

Izen guztiak egungo euskal idazkera arautuan ematen dira. Hori dela eta, bai agiri zaharretan agertzen diren zenbait grafia (*Eneco, Enneco* edo *Enneko*-ren ordez *Eneko*), eta baita erdal grafian idatziak ematen direnak (*Amaya*-ren ordez *Amaia*) egokitu behar izan dira. Bide batez, kontuan hartu beharrekoa da hasierako *J-*, euskaraz gaztelaniazko *y*-ren antzera ahoskatzen dena, ez dela *I-* idatzi behar. Beraz, *Jaione, Jon, Joseba, Josu, Josune, Justi*, etab. izanen dira forma zuzenak eta ez *Iaione, Ion, Ioseba, Iosu, Iosune, Iusti*, etab.

## Sexu bereizketa

Euskarak, oro har, izen batzuk erabiltzen ditu gizonezkoentzat (*Andres, Lukas, Untzalu,...*) eta beste batzuk emakumezkoentzat (*Edurne, Helena, Teresa,...*). Badira, ordea, tradizioz genero-mozioa izan duten izenen salbuespenak. Horietako gehienak santutegian agertzen dira (*Bizente/Bizenta, Joanes/Joana, Paulo/Paula, Petri/Petra,...*) eta, ikus daitekeenez, joera nagusia *–a* bukaera emakumezkoei ezartzea izan da (*Eneko/Oneka, Otsando/Otsanda,...*), K. Mitxelenak aspaldi adierazi zuen bezala.

Hitz arruntetatik eta toponimoetatik hartutako ponte izenen sexu bereizketa, tradizioari segituz egin da, kontuan izanik izen arruntek euskaraz ez dutela genero gramatikalik. Hori dela eta, printzipioz, kontsonantez eta *–i, –o, –u* bokalez amaitutakoak *(Haritz, Ibai,...)* gizonezkotzat ematen dira, eta *–a, –e* dutenak berriz, *(Ganeta, Iluntze, Loyola,...)* emakumezkotzat. Baina tradiziozko printzipio honek baditu bi salbuespen. Batetik, Andre Mariaren santutegiak direlako, emakume izentzat ematen direnak (*Aitziber, Irantzu, Izaskun,...*) eta, bestetik, gure historian gizonezkoak izendatzeko erabili direnak, besteak beste, *Gartzea, Otsoa, Sendoa,...*

## Gomendatzen ez diren izenak

Irizpide zehatzetan aipatutakoaren arabera, argi dago ezin direla ponte izentzat hartu soilik familia eta lagun artean erabiltzen diren txikigarri eta hipokoristikoak, ezta egungo euskal idazkera arautuan ematen ez direnak ere. Gauza bera gertatzen da pertsonaren duintasunaren kontra doazen izen itxura gaiztokoekin (*Aker, Ordots, Ozpin, Zakar,...*), indarrean dagoen legeak berak onartzen ez dituenekin. Horregatik guztiagatik, gurasoek beren haurrarentzat hautatu duten izenaren informazioa eskuratzen saiatu beharko lukete erregistratzera joan aurretik.

# CRITERIOS UTILIZADOS EN LA ELABORACIÓN DE *EUSKAL IZENDEGIA / DICCIONARIO DE NOMBRES DE PILA*

*Mikel Gorrotxategi Nieto*[1]
*Secretario de la Comisión de Onomástica*

La presente edición del *Euskal Izendegia / Diccionario de nombres de pila* es el final del camino recorrido por la Real Academia de la Lengua Vasca - Euskaltzaindia al respecto, principalmente a partir de 1966, año en el que se publicó el *Nomenclátor euskérico de nombres de pila aprobado por la Academia de la Lengua Vasca / Euskaltzaindiak onartutako euskal izenlerroa* propuesto por Aingeru Irigarai. A ella le siguieron posteriormente las tres ediciones del *Nomenclátor onomástico vasco* de 1972, 1977 y 1983 respectivamente, preparadas por Jose Maria Satrustegi.

Aquellas ediciones se limitaron casi exclusivamente a la aportación de una lista de nombres. Ello era debido a que, ni la situación de la que se partía, ni los medios de que se disponía permitían a Euskaltzaindia la posibilidad de realizar un trabajo más allá de la confección de listados, que era, por otra parte, la demanda con la que se encontraba la Academia, especialmente cuando por legislación se autorizó la imposición de nombres vascos.

Esa fue la aportación realizada. Sus frutos han sido espectaculares, dado que el panorama de nombres de pila en Euskal Herria ha cambiado sustancialmente a lo largo de pocos años.

Con la presente edición, esta Real Academia ha querido cumplir con un doble objetivo. Por una parte, ha tratado de completar al máximo las listas ofrecidas anteriormente, sacando a la luz muchos nombres ocultos en el rico tesoro de la onomástica vasca. Por otra parte, ha agregado a cada uno de los nombres una escueta información sobre su origen o referencia y significado, juntamente con sus equivalencias en castellano y en francés.

## Criterios generales

El principio básico que se ha tenido en cuenta a la hora de confeccionar este nomenclátor ha sido el del equilibrio entre el uso y el respeto a la lengua en los nombres propuestos. Se trata de dos criterios sencillos en apariencia, pero complicados en la práctica, dada la dificultosa

---

[1] *Mikel Gorrotxategi Nieto es secretario de la Comisión de Onomástica y académico correspondiente de Euskaltzaindia / Real Academia de la lengua Vasca.*

historia que nuestra lengua ha tenido para la normalización de sus nombres de pila.

Si nos atuviéramos únicamente al criterio del uso, deberíamos incluir como vascos nombres no vascos, tales como *Pedro* o *Pierres* y *Santiago*, por ser de los que mayor presencia han tenido en nuestra población hasta hace pocos años. Pero es evidente que tales nombres, transmitidos por influencia del francés y del castellano, no deben incluirse como vascos, dado que el euskera dispone de formas propias, como *Petri*, *Peru* o *Pello* y *Jakue* para dichas denominaciones. Por tanto, el criterio de la frecuencia del uso en la historia de nuestros nombres no puede adoptarse como válido por sí mismo. Sin embargo, la aplicación de dicho criterio sí resulta un filtro válido a la hora de decidir la inclusión o exclusión de nombres más recientes en el nomenclátor. En base a él, se han incluido nombres relativamente nuevos, de gran aceptación popular, como *Edurne, Iñaki* y *Miren,...* y se han excluido otros, como *Albontsa* u *Onintza*.

El principio del respeto a la lengua y, en consecuencia, la corrección lingüística presenta, asimismo, cierta dificultad. Creemos que pueden considerarse correctos los siguientes casos: nombres de pila vascos (*Andere, Eneko, Otsoa, Zuria,...*), topónimos que han derivado en nombres de persona (*Ainhoa, Arantzazu, Iratxe, Xabier,...*), nombres de origen foráneo, de uso antiguo en algunos casos (*Mikel, Petri,...*) y más moderno en otros (*Alexandra, Frantzisko,...*).

Cabe, igualmente, señalar que muchos nombres, que no precisaban acomodación fonética alguna, pasaron sin dificultad a engrosar las listas de nombres vascos (*Andres, Eba, Isaias, Katalina, Lukas,...*). Finalmente, es preciso indicar que el nomenclátor vasco cuenta con una considerable lista de nombres nuevos, que han tenido gran aceptación social. Unos fueron introducidos en el santoral vasco a partir de finales del siglo XIX (*Alazne, Ander, Edurne, Igone, Iñaki, Koldo,...*) y otros, referentes a nombres geográficos comunes (*Eki, Haizea, Haritz, Ibai, Oihana,...*) y a topónimos (*Adi, Arga, Bizkargi, Entzia,...*), han sido incluidos sobre todo a partir de la década de los sesenta del siglo XX.

**Criterios específicos**

Por su consideración de nombres vascos, han sido incluidos en este nomenclátor los siguientes casos:

1) Los nombres de origen lingüístico vasco. Se incluyen entre ellos: los hallados en las estelas funerarias de Aquitania entre los siglos I al III

(*Andere, Ilun, Seniko*,...), los documentados en la época medieval (*Eneko, Gartzea, Otsanda*,...), los hagiónimos (*Bladi, Eztebe, Garazi*,...) los literarios (*Aitor, Aitzol, Eleder*,...) y los mitológicos (*Intxisu, Mari, Urrika, Urtzi*,...).

2) Los nombres religiosos y los contenidos en la Biblia, transcritos bajo la grafía aprobada por Euskaltzaindia (*Adame, Emanuel, Joanes, Karlos, Marko*, *Petri*,...), así como sus variantes populares de uso común (*Murtuts, Peru*,...).

3) Los referentes a santuarios, especialmente marianos (*Ainhoa, Arantzazu, Begoña, Estibaliz, Iratxe, Leire*,…).

4) Los incluidos en el Nomenclátor de Arana-Eleizalde que han tenido arraigo popular (*Ander, Edurne, Gorka, Iñaki, Koldo, Miren*,...).

5) Los procedentes del vocabulario común vasco, con clara implantación como nombres de pila (*Haizea, Haritz, Ibai, Lorea, Oihana, Ur, Urki*,...).

6) Los topónimos, incluidos los referentes a santuarios no marianos, con incuestionable aceptación como nombres de pila (*Ainhize, Aralar, Gorbeia, Saioa*,...).

7) Los nombres históricos y mitológicos grecolatinos, así como los históricos de otras culturas europeas, también tienen cabida en este nomenclátor, al igual que lo tienen en nomenclátores de otras lenguas europeas. Dichos nombres han sido transcritos bajo la grafía aprobada por Euskaltzaindia (*Hektor, Horazio, Klio, Ziro*,...).

8) Es preciso advertir que los nombres adoptados son los originarios o, en su caso, las variantes más extendidas. Las formas locales, los diminutivos e hipocorísticos (*Axun, Iñixio, Joxe, Kontxi, Nuntxi*,...) quedan relegados al uso familiar y coloquial. No obstante, algunas formas hipocorísticas ya lexicalizadas han sido consideradas aptas para nombres de pila (*Beñat, Maider, Patxi, Pello, Txomin*,...).

Los nombres se han trascrito en la grafía vasca actualmente en vigor, aplicando las correcciones oportunas tanto a las formas obtenidas en la documentación antigua (*Eneko*, en lugar de *Eneco, Enneco o Enneko*), como a las que han sido transmitidas en grafía no vasca (*Amaia*, en lugar de *Amaya*). Debe tenerse en cuenta, asimismo, que la *J-* inicial que se pronuncia bajo el sonido de la *y* castellana, no debe transcribirse como *I*.

Por ello, son correctos *Jaione, Jon, Joseba, Josu, Josune, Justi*, etc., y no *Iaione, Ion, Ioseba, Iosu, Iosune, Iusti*, etc.

### Distinción de sexos

El euskera dispone, en general, de unos nombres para denominar a los varones (*Andres, Lukas, Untzalu,...*) y de otros para denominar mujeres (*Edurne, Helena, Teresa,...*). Existe, sin embargo, una clara tradición por la que el mismo nombre es utilizado para ambos sexos con el solo cambio de la terminación genérica. Los ejemplos son abundantes tanto en el santoral (*Bizente/Bizenta*, *Joanes/Joana, Paulo / Paula, Petri/Petra,...*), como fuera de él (*Eneko/Oneka, Otsando/Otsanda,...*). En tales casos, la tendencia tradicional ha sido aplicar la *–a* final para caracterizar el nombre femenino, tal como lo advirtió K. Mitxelena en su día.

Teniendo en cuenta que en euskera los nombres comunes no tienen género gramatical, el criterio adoptado para la distinción de sexo en los nombres de pila procedentes del vocabulario común y de los topónimos, ha sido el de la tradición heredada. Por ello, como principio, los nombres neutros terminados en consonante o en las vocales *–i, -o, -u, (Haritz, Ibai,...)* han sido catalogados como masculinos, y los terminados en las vocales *–a, -e* como femeninos *(Ganeta, Iluntze, Loiola,...)*. Esta norma cuenta, sin embargo, con dos excepciones. Una, la de los nombres de advocaciones marianas (*Aitziber, Irantzu, Izaskun,...*) que son femeninos, la otra, la de los que tienen una fuerte implantación, como es el caso de *Gartzea, Otsoa, Sendoa,...* para denominar varón.

### Nombres no recomendados

No hace falta recordar que, de conformidad con lo indicado en la exposición de los criterios específicos, no pueden imponerse los nombres diminutivos e hipocorísticos –los cuales quedan relegados al uso en el ámbito familiar y coloquial–, ni tampoco los de grafía vasca no correcta. Obviamente, tampoco tienen cabida en el presente nomenclátor los nombres considerados no dignos e indecorosos (*Aker, Ordots, Ozpin, Zakar,...*) que la legislación vigente no permite imponer. Es, por ello, recomendable que los padres obtengan la información previa necesaria antes de imponer el nombre a sus hijos.

# CRITÈRES UTILISÉS POUR L'ÉLABORATION DE EUSKAL IZENDEGIA / DICTIONNAIRE DES PRÉNOMS

**Mikel Gorrotxategi Nieto** [1]
**Secrétaire de la Commission d'Onomastique**

La présente édition de *Euskal Izendegia* / *Dictionnaire des Prénoms* est l'aboutissement d'un chemin parcouru par l'Académie de la Langue Basque – Euskaltzaindia, surtout à partir de 1966, année de la publication du *Nomenclátor euskérico de los nombres de pila aprobado por la Academia de la Lengua Vasca / Euskaltzaindia onartutako euskal izenlerroa*, présenté par Aingeru Irigarai. Parurent ensuite les trois éditions postérieures de la *Liste des Prénoms Basques* de 1972, 1977 et 1983 respectivement, préparées par José María Satrustegi.

Ces éditions se limitèrent presque exclusivement à apporter une liste de prénoms. Cela était dû au fait que, ni la situation d'où l'on partait, ni les moyens dont on disposait ne permettaient à Euskaltzaindia d'effectuer un travail allant au-delà de l'élaboration de listes qui, par ailleurs, reflétait la demande à laquelle l'Académie devait faire face, tout particulièrement lorsque la législation autorisa les déclarations de naissance sous des prénoms basques.

C'est ce en quoi a consisté son apport. Les fruits ont été spectaculaires car le panorama des prénoms en Euskal Herria s'est profondément transformé en l'espace de quelques années.

Avec cette présente édition, cette Académie a voulu accomplir un double objectif. D'une part, elle a essayé de compléter au maximum les listes offertes précédemment, mettant au grand jour de nombreux noms enfouis dans le riche trésor de l'onomastique basque. D'autre part, elle a ajouté à chacun d'entre eux une brève information sur leur origine ou une référence et une signification, ainsi que leurs équivalences en espagnol et en français.

## Critères généraux

Le principe de base dont on a tenu compte au moment d'élaborer cette liste des prénoms a été l'équilibre entre l'usage et le respect de la langue dans les noms proposés. Il s'agit de deux critères en apparence simples, mais compliqués dans la pratique, étant donné les moments difficiles que notre langue a dû traverser, au cours de son histoire, pour parvenir à la normalisation de ses prénoms.

Si nous nous en tenions uniquement au critère de l'usage, nous devrions inclure comme basques des prénoms non basques tels que *Pedro* ou *Pierres* et *Santiago,* parce que ce sont les prénoms qui ont été les plus employés naguère par

[1] Mikel Gorrotxategi Nieto est secrétaire de la Commission d'Onomastique et membre correspondant d'Euskaltzaindia / Académie de la Langue Basque.

la population. Mais il est évident que de tels prénoms, transmis sous l'influence du français et de l'espagnol, ne doivent pas être inclus comme basques, puisque l'euskera possède ses propres formes, comme *Petri*, *Peru* ou *Pello* et *Jakue* pour ces dénominations. On ne peut donc pas adopter comme valable en soi le critère de la fréquence de l'usage dans l'histoire de nos prénoms. Cependant, il est vrai que l'application de ce même critère constitue un filtre valable lorsqu'il s'agit de décider d'inclure ou d'exclure de la liste des noms plus récents. En se basant sur ce critère, on a inclus des noms relativement nouveaux, de grande acceptation populaire, comme *Edurne*, *Iñaki* et *Miren*,... et on en a exclu d'autres, comme *Onintza* ou *Albontsa*.

Le principe du respect de la langue et, en conséquence, de la correction linguistique présente également une certaine difficulté. Nous croyons que l'on peut considérer comme corrects les cas suivants : les prénoms basques ( *Andere*, *Eneko*, *Otsoa*, *Zuria*, ... ), les toponymes qui sont devenus des noms de personnes ( *Ainhoa*, *Arantzazu*, *Iratxe*, *Xabier*, ...), les prénoms d'origine étrangère d'usage ancien dans certains cas ( *Mikel*, *Petri*, ... ), et plus moderne dans d'autres cas ( *Alexandra*, *Frantzisko*, ...).

Il convient de signaler aussi que beaucoup de prénoms,qui ne requéraient aucune adaptation phonétique, sont venus tout naturellement augmenter les listes de prénoms basques ( *Andres*, *Eba*, *Isaias*, *Katalina*, *Lukas*, ... ). Finalement, il faut indiquer que la liste des prénoms basques comprend un nombre considérable de noms nouveaux qui jouissent d'une grande acceptation sociale. Certains furent introduits dans le recueil basque des noms de saints à la fin du XIXème siècle (*Ander*, *Edurne*, *Igone*, *Iñaki*, *Koldo*, ...), et d'autres qui faisaient référence à des noms communs (*Eki*, *Haisea*, *Haritz*, *Ibai*, *Oihana*...) et à des toponymes (*Adi*, *Arga*, *Bizkargi*, *Entzia*), ont été introduits au XXème siècle, surtout à partir des années 60.

## Critères spécifiques

C'est pour leur considération de noms basques que les cas suivants ont été inclus dans ce nomenclateur :

1) Les noms d'origine linguistique basque. On inclut parmi eux : ceux qui furent retrouvés sur les stèles funéraires d 'Aquitania entre le Ier et le IIIème siècles (*Andere*, *Ilun*, *Seniko*, ...), les noms attestés à l'époque médiévale (*Eneko*, *Gartzea*, *Otsanda*, ...), les hagionymes ( *Bladi*, *Eztebe*, *Garazi*, ... ), les littéraires ( *Aitor*, *Aitzol*, *Eleder*, ...) et les mythologiques ( *Intxisu*, *Mari*, *Urrika*, *Urtzi*...).

2) Les noms religieux et ceux contenus dans la Bible, transcrits avec la graphie approuvée par Euskaltzaindia ( *Adame*, *Emanuel*, *Joanes*, *Karlos*, *Marko*, *Petri* ...) ainsi que leurs variantes populaires d'usage commun ( *Peru*, *Murtuts*... ).

3) Ceux faisant référence à des sanctuaires, spécialement les sanctuaires marials

( *Ainhoa*, *Arantzazu*, *Begoña*, *Estibaliz*, *Iratxe*, *Leire*... ).

4) Ceux inclus dans la Liste des Prénoms Basques de Arana- Eleizalde qui ont connu un grand succès populaire ( *Ander*, *Edurne*, *Gorka*, *Iñaki*, *Koldo*, *Miren*, ... ).

5) Ceux provenant du vocabulaire basque commun, bien implantés en tant que prénoms ( *Haizea*, *Haritz*, *Ibai*, *Lorea*, *Oihana*, *Ur*, *Urki*,...).

6) Les toponymes, y compris ceux se référant à des sanctuaires non marials, jouissant d'une acceptation populaire incontestable en tant que prénoms ( *Ainhize*, *Aralar*, *Gorbeia*, *Saioa*, ... ).

7) Les noms historiques et mythologiques gréco-latins, ainsi que les noms historiques d'autres cultures européennes,figurent aussi dans cette nomenclature, comme dans les nomenclatures d'autres langues européennes. Ces noms ont été transcrits avec la graphie approuvée par Euskaltzaindia (*Hektor*, *Horazio*, *Klio*, *Ziro*,...).

8) Il faut souligner que les noms adoptés sont les originels ou, selon le cas, les variantes les plus répandues. Les formes locales, les diminutifs et les hypocoristiques ( *Axun*, *Iñixio*, *Joxe*, *Kontxi*, *Nuntxi*, ...) sont relégués à l'usage familial et familier . Cependant, certaines formes hypocoristiques, maintenant lexicalisées, ont été considérées comme susceptibles d'être employées comme prénoms (*Beñat*, *Maider*, *Patxi*, *Pello*, *Txomin*,...).

Les noms ont été transcrits dans la graphie basque actuellement en vigueur, en appliquant les corrections opportunes, tant aux formes obtenues dans les documents anciens ( *Eneko*, au lieu de *Eneco*, *Enneco* ou *Enneko*), qu'à celles qui ont été transmises en graphie non basque ( *Amaia*, au lieu de *Amaya*). On doit également tenir compte du fait que le *J-* initial qui se prononce avec le son du *y* castillan, ne doit pas être transcrit comme *I*. C'est pourquoi les prénoms corrects sont *Jaione*, *Jon*, *Joseba*, *Josu*, *Josune*, *Justi*, etc, et non *Iaione*, *Ion*, *Ioseba*, *Iosu*, *Iosune*, *Iusti*, etc.

## Distinction de sexes

L'euskera dispose, en général, de certains prénoms pour désigner les garçons (*Andres*, *Lukas*, *Untzalu*,...) et d'autres pour désigner les filles (*Edurne*, *Helena*, *Teresa*,...). Il existe cependant une tradition selon laquelle un même prénom est utilisé pour les deux sexes avec comme seul changement celui de la terminaison générique. Les exemples sont abondants, tant dans le recueil des noms de saints (*Bizente/ Bizenta*, *Joanes/ Joana*, *Paulo/ Paula*, *Petri/ Petra*,...) qu'ailleurs (*Eneko/Eneka*, *Otsando/Otsanda*,...).
Dans des cas semblables, la tendance traditionnelle a été appliquée le *–a* final pour caractériser le prénom féminin, comme le proposa K. Mitxelena en son temps.

Compte tenu qu'en euskera, les noms communs n'ont pas de genre grammatical, le critère adopté pour la distinction de sexes dans les prénoms provenant du vocabulaire commun et des toponymes, a été celui de la tradition reçue en héritage. C'est pourquoi, comme principe, les noms neutres terminés par une consonne ou par les voyelles *–i*, *-o*, *-u*, (*Haritz*, *Ibai* ) ont été catalogués comme masculins, et ceux terminés par les voyelles *–a*, *-e*, comme féminins (*Loyola*, *Iluntze*, *Ganeta*, ... ). Cette norme comporte cependant deux exceptions. L'une, celle des noms d'invocations mariales (*Aitziber*, *Izaskun*, *Irantzu*,...) qui sont féminins, l'autre, celle des prénoms fortement enracinés comme c'est le cas de *Gartzea*, *Otsoa*, *Sendoa*,... pour désigner un garçon.

## Prénoms non recommandés

Il n'est nul besoin de rappeler que, en accord avec ce qui a été indiqué dans l'exposé des critères spécifiques , on ne peut pas donner les diminutifs et hypocoristiques – qui restent relégués à l'usage familial et familier –, ni non plus ceux à la graphie basque incorrecte. Évidemment, les noms considérés comme une attaque à la dignité et à la bienséance ( *Aker*, *Ozpin*, *Ordots*, *Zakar*,..) que la législation actuelle ne permet pas d'utiliser, ne figurent pas non plus dans cette liste des prénoms. C'est la raison pour laquelle il est conseillé aux parents d'obtenir au préalable l'information nécessaire avant de donner un prénom à leurs enfants.